Jean Etxepare heldua saiatzen da *Beribilez* (1910) bidaia-kontakizunean hil aurreko pentsamoldea adierazten. Azpimarratu nahi da medikuak egin duen ahalegina gizartean topatu dituen jarrera kontrajarri batzuk bateratzeko: hain zuzen, euskal batasunari dagozkionak, eta laikotzearen ingurukoak, XX. mendearen hasieran muntakoak ziren aferak; desadostasun horien inguruan aipagarriak dira, hurrenez hurren, Euskal Herriko historiaren ikuspegi orohartzailea, eta, bestetik, jesuiten gaineko estereotipo batzuk kolokan jartzea.

**Gako-hitzak:** bidaia-kontakizuna, euskaltasuna, laikotzea, literatura konparatua.

## 1. Sarrera

Ezagunak dira literatur kritikan Jean Etxepare Bidegorrik bizitzan zehar egin behar izan dituen moldaketa-ahalegin bereziak idazle gisa biziraun ahal izateko XX. mendearen hasierako Iparraldean (Casenave, 2002; Altonaga, 2006; Gartzia Trujillo, 2016; Ortiz de Pinedo, 2018).

Aurreko kritika-lanek helarazi dizkigute kinka horren hari nagusiak. Orrialde hauetan aldeztu nahi da medikuaren 1931ko *Beribilez*ek ekarpen bat egin duela, 1910eko *Buruxkak*eko jarreren osagarria, muturtutako gizarte-sentiberatasunak zelan edo halan eztitzera datorrena. Desadostasunak izan dira Jean Etxepare alderdi batarekin edo bestearekin lerratu den, azken urteotako bibliografian irakur daitekeen legez.

Idazle enblematiko honen bestelako alderdi batzuk jorratu dira: idazle bihurtzeko kazetari gazteak egin zituen urratsak eta irakurle urriak ugaritzeko haren pausoak; 1900 inguruko gizarte-ingurua ere jorratu da; jatorria, haurtzaroa eta jakingarri biografikoak; haren formazio zientifikoa, biologiaren hurbileko asmo dibulgatzailearekin; tradizio katolikoarekin zituzkeen arazoak… hitz batean esateko, haren ideologia maiz aztertu da, hark modernitatea aitzinatzeko egin urratsak barne (Ortiz de Pinedo, 2018).

Imagologiaren esparrua aintzat hartuta, helduaroko idazlea erakutsi nahi dugu neurritasun-ariketan murgildua hemen, nahiz eta ideietan lehengoan iraun; pentsabideak ez ezik, gizartea ere kontuan hartuko da. Horretara, hipotesia funtsatzeko datuak *Beribilez* haren bigarren liburuko pasarteetatik zuzenean atera nahi ditugu.

Zubi horiek eraikitzeko baziren gainditu beharreko bizpahiru oztopo, besteak beste, euskaltasunaren eta laikotasunaren ingurukoak. Hona moldatzeko saio horiek zehazki zein diren, ikerlan honetan bilduak: nazio-eraikuntza, mugaren bi aldeetako harremanak eta jesuiten gaineko estereotipoak.

Metodologia izango da ateratzea testuko berbalditik bertatik ideologia-elementu horien aztarnak prozedura semiotiko batez (Hamon, 1984), imagologiak eskaintzen duen baliabide batek osatua, hau da, estereotipoak

aztertzea bidaia batek eman duen herrialde bisitatuaren irudia jasotzeko (Pageaux, 1989), literatura konparatuaren esparruan.

Liburuaren hari nagusia zehaztearren, utz diezaiogun idazleari berari *Beribilez* autoko bidaia-kontakizunaren mamia azaltzen: «Agorrilaren lehen astezken-goiz batez abiatu ginen beraz Cambotik zazpi lagun —hiru gizon eta lau andre, bi beribil atherbedunetan— aratsean berean gibelerat sartzeko xedearekin, Loiolako ikusgarri omen-handikoez begiak betherik"1.

Laburbilduz, artikulu honen hipotesi gidaria izango litzateke helduaroko jarrera neurritsu hori, nortasun konplexu baten fruitu umotua, areago plazaratzea, ez bailitzateke hori idazle honen ekarpen bakarra: gaur egun, iraunarazteko modukoa sumatzen dute idazlearen euskal irudíteria (*imaginaire*) proaktiboa ere zenbait kritikarik, azken lore-jokoetako etsiaren kontrakoa, alegia, medikuak idatzi aurretxokoa (Casenave, 2002), eta zuhurra ere bada jakitea Iparraldekoek zer esan duten hango zerez.

Zehaztutako hipotesiaren harira, hiru puntu nagusi jorratuko dira, batez ere: euskal batasunaren aldeko jarrera moderatua, apala nahi bada; mugaren bi aldeen artean izan diren harreman historikoak, modu diplomatikoan interpretatuak, eta estereotipoak deseraikitzea elkar ulertzea oztopatzen duten heinean.

### 1.1. **Etxepare eta euskal batasuna**

Atal honetan erakutsi behar dugu medikuak zuen nazio-eraikuntzaren ikuspegia: horretarako kultura zitzaion ezinbestekoa, hau da, herria argitzea ezari-ezarian unibertsitatearen bitartez, eta, gainerakoan, gainerako Europako nazioek urratu duten bideari ekitea, pausoz pauso, prozedura jakin bati eutsita.

Jean Etxeparek oso argi zeukan 1922an nola eraiki balizko euskal komunitate sendoa teorikoki, eta eraikuntza horretan unibertsitateak izan ahal zuen eginkizuna (*De Re Publica edo politikaz*:127-131)2, jendea argitu beharra, alegia. Oso kontuan zeukan zein ziren Hegoaldeko asmoak autonomia eskuratuko bazen euskara lagungarritzat hartuta, nahiz eta ez zen zeharo optimista, nolabait esatearren; Iparralderako asmoak, aldiz, apalagoak zituen, dudarik gabe, baina erne erreparatzen zion *probintzi*en ibilbideari, badaezpada ere.

Jean Etxepareren neurritasuna euskal batasun baten alde egitean ere nabari da, hau da, idazketa-lanarekin euskaltasun neurritsua bultzatzen duela.

> “Berezgoak ez du bakarrik nahi, doi aberastasun, doi jende buru, doi lur eremu, doi alaitasun. Nahi du oraino eta, guziz, jende xehea neurri onean argitua, mintzai bat aski jori eta idazleen artaz goratua, jendearen arteko buruzagi argi eta bihozdunak: nahi du, hitz batez, ororen lehia kartsua, ororen odol-hotzeko burutzapen bera. Jende xehea gai denetz, hori da guzia. Gai ezpada, alferretan gizon bakar batzuen urratsak, zonbat nahi merezimendu duketen berek, zenbat nahi beren alde zuzentasuna. Hortakotz zaiku iduri Universidad delakoa behar dela lehenik ardietsi, eraiki, alharazi urte andana batez. Eskulan guzien jakitate egiazkoa errotikakoago, bai eta datxikon euskarazko hizkuntza heda lehenik, jende xehearen artean, eta gero ikus» (Charritton P., Kindle kokapenak 1537-1543)

Edozein taldek identitate-sinboloak izan ohi ditu, inklusio-mugak, eta ez bakarrik etsaiak identifikatzea zein kanpokoei mugak ezartzea, jakina denez. Komunitate kohesiboak sortzeak errazten ditu komunitateok mobilizatzeko saioak, esan gabe doa. Eta Jean Etxeparek, oharkabe antzean bada ere, elementu kulturalak biltzen ditu kolektibitateak identitate bat izateko: hizkuntza, janzkera, monumentuak, tradizio nazionalaren leku seinalatuak, ohiturak… Ez horiek bakarrik, paisaia ere oroigarri komunitario eta sinbolikoz josia agertzen da Jean Etxepareren begietan.

Nahiz eta Etxepare politikoki engaiatuta agertu ez, ezin ukatu idazlearen desmartxak badituela antzekotasunak garai hartan Frantziako idazle erregionalistek egiten zituzten eskualde-deskripzioekin, hau da, arlo folklorikoari arreta zabala eskainita: gastronomia, janzkera, herri-kirolak…

Oro har, XIX. mendeko nazioek batasun nahiko hauskorra zuten Europan: adibidez, Italia, Alemania, Espainia eta Frantzia heterogeneo samarrak ziren… Horretara, Espainian erregionalismoak oztopoak jartzen zizkion bateratze konstituzionalari (Lorenzo Arza). Garai hartan, beraz, nazioak batzeko prozesuak abiatu zituzten elite intelektualek, eta prozedura jakin bati ekin zitzaion, hau da, tradizioa asmatzeari ekin zitzaion nazioa eratu nahi izan zuten lekuetan (Leoné, 2008).

Estatua duten nazioetan, aldiz, lehenik mugak ezartzen dira, eta, ondotik, sentimendu aberkoia sorrarazten da; nazio-eraikitze kulturala ez da lehentasun kronologikoa. Euskal Herria estaturik gabeko nazio estatu-nahia (*state-seeking nation*) izanik, nazionalismo kulturalaren bidea baino ez zaio geratzen, eta Jean Etxepare ere murgilduta dago garai-giro horretan; giro horretako seme, antzeko kezkak darabiltza, abertzalea ote zen igartzen ibili beharrik gabe.

Jean Etxeparek ere zehaztu ditu zein diren Euskal Herriari jazarri zaizkion etsaiak, iragaitzez. Puntua garrantzitsua da, nazioa eraikitzeko ahaleginetan, kanpotarren irainak eta laidoak kontuan hartzen baitira normalean, estatu bila dabiltzan nazioetan behintzat. Jean Etxeparek ez ditu gogoko Karlomagnoren eta Napoleonen ibilerak, «moro higuina» (Etchepare, 1931:14) ez du gogoko; ez du gogoko, era berean, euskal kostaldeko jendemodu turista handi-mandia (Álvarez Junco, 2001:190 eta hur.).

Sentiberatasun nazionala akuilatzeko beste baliabide narratibo bat da salatzea nola jatorrizko biztanleek, beren xalotasunean, arrotzei utzi behar izan dizkieten tokiko ekonomiaren giderrak: José Alvarez Junco historialariak dakarren kasuan, espainiarrek (Álvarez Junco, 2001:206); *Beribilez*en kasuan, euskaldunek; historikoki, lehen euskal industria Bilbo inguruetan ingelesek abiatu zuten Euskal Herrian. Horretara, horrelako ondikoei aurre egitea opa die gipuzkoarrei *Beribilez*ek, eta herrialdea industrializatzea euskaldunen gidaritzapean (Etchepare, 1931:50).

Era berean, Lehen Mundu Gerraren sasoiko kazeta-artikulu batzuetan Jean Etxeparek Frantziaren kasuan ere fenomeno bera deskribatu zuen, ahalegin belikoaren ondorioz Frantzia kanpoko potentzia aliatuen mende geratzean: zorpetzea, etab. ("nundik halere gorde dezazuket komerzioko ala industriako giderrik hoberenak aspaldiskoan jadanik frantsesek galduak dituztela han beren faltaz!» (Etchepare, 1931:72).

### 1.2. **Historia diplomatikoa**

Euskaltasunaren esparrua bertan behera utzi gabe, aipa dezagun Etxepareren obraren beste alderdi bat non haren neurritasuna eta zentzu ona nabarmendu den. Etxepare konturatu da nazio-sentiberatasunak sortzeko bi-

dean historia komun bat eraikitzeak ere garrantzia daukala, nazio liberala legitimatzeko, eta barne kohesioa sustatzeko; baina, horretarako, aukera denak onak izan ez, hark bazekien legez.

Bidaia-kontakizunean toki eta gune sinboliko identitarioak aipatu dira: Orreaga, Iruñea, errege nafarrak… (Casenave, 2002:385). Adibidez, Iruñeari buruz honela dio narratzaileak: «Eskualerriko hiri guzien artean aipagarriena da Iruña» (Etchepare, 1931:27), Jean Etxepare historiografia euskaltzalearen jakilea baita. Haatik, ez da pentsatu behar Etxeparek Bilboren berririk ez zuela, Bilbo mende hasieran loratze ekonomiko betean baitzegoen, eta idazlea bertan egona Azkue bisitatzen (Etxepare, 1920:187-202). Kontua da Iruñea hiri buruzagia zela historiografia abertzalearen arabera, Nafarroako erreinu zaharraren hiriburua.

*Beribilez*ek historia-memento nagusi bi aipatu ditu, autoa Ibañetako lepotik pasatuta: Karlomagnorena VIII. mendean, eta Napoleonena 1811n (Etchepare, 1931:14-15). Historiaren pasarte horietan, narratzaileak gertakari historikoen handitasun-sentipena komunikatu nahi izan dio irakurleari, soldadu kopuru handiak aipatuta, nazioaren iruditeria arranditsua sortu nahiz, nazioaren sublimitatearen bila, alegia:

> "Iragaiten dugu azkenekotz Ibañetako lepoa, hainbertze mende huntan hainbertze miliun gizon, hanitzak armadetako soldado, bere arteka xabalari esker bidatu dituen lepoa» (Etchepare, 1931:14)

Edo fraideen ugaritasuna azpimarratuta:

> "Dena den, lepoaren bertze ixurkian, lepotik berehala, huna egun Orreaga, bere komentu famatuarekin. Zoin zahar orai, zoin huts eta hits, komentu hau bere etxe-andana gaitzarekin! Nork erranen luke bazirela noizbait, hortik atheraiak, bospasei mila fraidetaraino, erleak beren kofoirat bezala horrat biltzen zirenak noiztenka?» (Etchepare, 1931:15)

Badirudi narratzaileak irakurlea txiki sentiarazi nahi duela historia-datuen bitartez. Masa-gizartean murgildu gaitu, kopuru handiak erabilita, nazioak ere behar baitu bere burua egituratzeko magma bateratzailea, banakoen artean elkartasuna sortuko duena.

Jean Etxeparek aipatu du euskal historia bestelako helburu politiko batekin ere. Sortu nahi du historia-iruditeria komun adostu bat mugaz bi aldeetako euskaldunak aise sentitzeko modukoa, hau da, Hegoaldekoak kontuan izanda historiografia frantses ofiziala birmoldatzen duela. Hori da Karlomagnoren eta Napoleonen ibileren bertsioek duten funtzioa *Beribilez*en. Hala ere, ez du beti bide «abertzale» hori urratu: dio Nafarroako errekonkistan XVI. mendean, San Ignazio Loiolakoa izango zena Gaztelaren alde borrokatu zela, historiografia espainiarrari men egiten, esanez erasotzaileak bearnesak zirela, eta ez Nafarroako erresumaren defendatzaileak. Asmoa izan du, hor ere, Ignazioren figura aldarrikatzea, santua ere euskaltasunaren ikur izan daitekeen heinean (Boixareu (arg.), 2002:838-842).

Jean Etxepareren ikuspegia ez da inozentzian erori. Badaki historiak liskarrak sor ditzakeena, eta baita elkarbizitzarako trabak ere euskaldunen artean. Esan daiteke Jean Etxepare, Frantziako ikuspegi historikoari eraso gabe, esakuntzaren bitartez euskal auzoen arteko harremanak gaiztotuko ez dituen bertsioa ematen saiatu dela *Beribilez*en.

Ikusten dugu Jean Etxeparek erabili duela historia ikuspegi positibista samarretik, nahiz eta inplikatu den helburu politikoekin modu hein batean lausoan, esan bezala. Ez du bat egin Augustin Xaho batek edo Garay de Monglave batek egin zezaketen euskalduntasunaren interpretazio mitikoarekin, datatzen ez duen euskaldun loriatsu baten goraipamenarekin, alegia, egitandi heroiko eta guzti, mitologia-ukituko kontakizunak erabiltzen baitziren erromantizismo-kutsuko idazki euskaltzaleetan:

> “Imperaba en el país un trasnochado romanticismo pseudo-historicista que construía tradiciones legendarias con supuestos heroísmos de los antiguos vascos, rivales nunca vencidos de los romanos, la gesta de Roncesvalles, horrores medievales y briznas de consejas y leyendas» (Michelena, 1960:136)

Jean Etxeparek ez ditu herri-elezaharrak erabili iruditeria herdertar bat sortzeko, ezaguna baita Johan Gottfried Herder-ek (1744-1803) herri-jakintza eta hizkuntza berreskuratzea bultzatu zuela asmo identitario batekin: Europan Herderren ideietan oinarritu ziren nazio-mugimendu asko, herri bakoitzari nortasun bereizgarria emateko. Ziur aski, Jean Barbier Herderren

ikuspegi horretatik hurbilago zegoen, *Piarres I* (1926) idatzi zuenean, *Beribilez*en eleberri garaikide bat aipatzearren.

Hein batean, Jean Etxepareren «nazionalismoa» gehiago litzateke Ernest Renanen (1823-1892) ildokoa ezen ez Herderren ildokoa, gehiago baina ez erabat beste nonbait azaltzen denez. Ernest Renanek naziotasun frantsesa funtsatu nahi izan zuen hiritarren eguneroko hitzarmenean (Renan, 2004)3, ez etnia-nortasun baten autogobernu-eskubidean Herder alemaniarrak bezala (Thiesse, 2014).

Alde batera, Etxepareren nazioa kontraktuala da Ernest Renanek (1823-1892) «Zer da nazioa?» (1882) hitzaldi famatuan nahi zuenez, eta, horrenbestez, ez primordialista Herderren estilora. Jakina denez, Renan historiografo frantsesak postulatzen zuen nazioa eguneroko kontratua dela, eta ez sustraiekin zerikusia duen ezer, Herderrek ez bezala. Badirudi Renanek helburua zuela memento hartan erro alemaneko Alsaziaren frantsestasuna justifikatzea, eskualdeak erro alemanak baitzituen (Renan, 2004)4. Jakina denez, Alsazia eskualdea Alemania eta Frantzia estatuetakoa izan da txandaka historian zehar, eta gatazka-iturri haren lurraldetasuna.

Ernest Renanen hitzaldiaren mamia honela aurkezten du E. A. Igartua itzultzaileak:

> “Nazio bat, beraz, elkartasun handi bat da, iraganean egindako eta aurrerantzean egiteko prest gauden sakrifizioen sentimenduek osatzen duten elkartasuna da. Iragan bat suposatzen du, baina orainean gertakari ukigarri baten bidez laburbiltzen da: baiezkoa, hots, elkarrekin bizitzen jarraitzeko garbiro adierazitako nahia. Nazio baten existentzia (barkatu metafora) egunero gauzatu behar den plebiszitua da, gizabanako baten existentzia bizitzaren aldeko betiereko baieztapen etengabea den bezalaxe» (Antxustegi, 2004).

Gure ustez, Jean Etxeparek oreka bilatu nahi du, naziotasun mota bien arteko zerbait proposatuta, zeren eta Frantziako eredua kontraktualista bazen ere, Hegoaldeko abertzaletasunak eite herdertarragoa zukeen, oker ez bagaude: idazleak estatuak euskal ohiturak begiratzea nahi du, nekez bada nekez, baina liberalismoak gizabanakoari aitortzen dion autonomia– eta sormen-eskubidea ukatu gabe.

Laburbilduz, Jean Etxeparek ikuspuntu diplomatiko batetik gogoratzen ditu historiako pasarteak. Ez du berritu nahi bi auzo-estatu inplikatuen arteko liskarrik. Esan daiteke ez dituela euskaldunak beren artean liskartu nahi, nahiz eta batzuetan ikuspegi frantses ofiziala moldatu behar izan horretarako. Horrelakoak dira Ibañetako lepoko gertakarien bertsioak *Beribilez*en, non Karlomagnoren (Etchepare, 1931:15) eta Napoleonen (Etchepare, 1931:26) espedizioak gogoratzen diren. Bietan inbasioak deitoratzen ditu narratzaileak; badirudi erreparazio historiko baten alde egiten duela, Pirinioen bi aldeetako auzokide euskaldunen arteko bizikidetza adiskidetsuaren bila, hau da, auzotasun onaren bila. Delako historia diplomatikoaren mugarriak zerrendatuko ditugu, hura mendez mende gertakari jakinetan nola islatu den erakusteko.

### 1.2.1. *Euskal historia*

#### 1.2.1.1. Karlomagno eta euskal epopeia

*Beribilez*ek arbaso gogoangarrien lerroan jartzen ditu Orreagan Karlomagnori oldartu zitzaizkion euskaldunak.

Indar epikoaren bila dabil Jean Etxepare euskal iruditeria osatzeko, komunitatea sendotu asmoz. Ez alferrik, Europako nazioak ere izateko delibero baten sorkariak dira. Delibero horrek naziotasun irudikatua sortzera daramatza liberalak. Besteak beste, sorkuntza hori gauzatzeko epika baten premia sumatu zuten, nazioari zilegitasuna emango zion epika bat. Oroitzapen-multzo heroiko horrek nazioko herritarrak batuko zituen sinbolikoki, aurrerantzean. Hori da, *Beribilez*en ere, Errolanen heriotza eta euskaldunen oldarraldia oroitzeko ariketaren funtsa Orreagan (Thiesse, 2004).

Gehiegi esatea izan daiteke Etxeparek nazioa sortzeko asmo zehatza zuenik. Gehiago da idazleak giroan dagoen elementu bat beretzen duela, historia-giroan pil-pilean baitzegoen nazio-sorkuntza.

Bi arrazoi ematen ditu Karlomagnoren ekintza militarra gaitzesteko: bata, Frantziako erregeak ostikatu egin zizkien zuzenak euskaldunei: «Nabarreko

hiri-nausia Moro higuinari ideki» zien; eta, bestea, «gure menditar gaizoen arthaldeer» oldartu zitzaien (Etchepare, 1931:14)

Orreagako guduaren gaia eta inguruabarrak sarritan jorratu dira euskal literaturan, euskal nortasun historikoaren mugarria izanik, gogotik kommemoratzen baita. Txikiak handia bentzutu dezakeelako erakusgarria da, eta, horrenbestez, 1886an, Arturo Campiónek *Orreaga* idatzi zuen. 1926an, J. M. Hiribarrenek *Altabizkarreko kantua* izenekoa idatzi zuen (Hiribarren, 1926); 1979an, Bernardo Estornés Lasak kontakizun bera paratu zuen erronkarieraz. Amaitzeko, oraintsu, Euskal Autonomia Erkidegoko Benito Lertxundi bardoak ere kantuak eskaini dizkio disko batean (Lertxundi, 1981). Diskoan bai baitira kantariaren beraren, Garay de Monglaveren (1874ko testua), Iratzederren eta Jose Angel Irigarairen sormen-lanak Ibañetako lepoan sortutako istiluei buruz. Bada diskoan Arturo Campiónen (1917) «El bardo de Izalzu» lanaren gainean egindako kanta bat ("Gartxot"), Orreagako guduaren ingurukoa hura ere. Komiki liburua (2003) eta filma (2011) egin ditu Gartxot bardo errebelde eta zigortuaren gainean Asisko Urmenetak, beste artista batzuen laguntzarekin: Marc Armspach, Jokin Larrea, Juanjo Elordi…[5]. Augustin Xahori buruzko komiki batean, antzeko bidea urratu du Urmeneta marrazkilariak nazio-eraikuntza modu baten barnean oraintsu (2018).

Badirudi Etxeparek tradizio jakin batean kokatzen duela bere burua, baina gehiago alderdi euskaldunera lerratuta, ezen ez frantsesera, *Beribilez*eko bertsioari erreparatuz gero. Eztabaidagarria izango da, noski, historiaren zientziak datuak nola interpretatu beharko lituzkeen, baina idazlearen aukera da esanguratsua hemen. Horretara, *Chanson de Roland* (1100) delakoan Errolan zaldun frankoa islamaren kontra ariko zen, ez euskaldunen kontra eta arabiarren alde *Beribilez*en bezala.

Ez dugu izan identifikatzerik zein bertsio jarraitzen duen Jean Etxeparek Orreagako pasartean. Deitoratzen du Orreagan zehar gerlari frankoak iragatea, bai Karlomagnorekin bai Napoleonekin. Jean Etxeparek justiziaren alde egiten du, nahiz eta gertakari historikoak benetan nola izan diren ez duen esaten. Galdera eta baldintza artean egiten ditu adierazpenak, bereziki Orreagari buruzkoan.

"Egia othe da Charlemagne adostua zinutela lehentxago Moroekin? adixkidantzaz emana zuela Moroer, Zaragozarekin, Aragoniako bazterra? Moroak alderat koka zitezin Eskualerrian, Charlemagnek zuela urrarazia Iruñako hiria zaintzen zuen harresi gora?

Egia balin bada, Eskualdunek bazuten zertaz izan hasarre» (Etchepare, 1931:14)

Adierazpenaren modalizazioa erabiltzen du tentu handiz iritzia emateko. Probabilitate hipotetikoa ematera baino ez da ausartzen. Positibismoaren lerroan, idazleak ez du egiatzat eman nahi funts zientifiko eskasekoa izan daitekeen adierazpenik (Le Querler, 1996:71)6. Nolanahi ere, zalantza guztiak argitzen ez baditu ere, jarrerak euskaltzaleak dira eta ez bertsio nagusi konbentzionalen araberakoak.

Orreagako historiaz gain, bertako kolegiatan errege nafarren zin egiteko liburua bilatzen dute auto bietakoek, gurari oso sinbolikoa; Antso Handia aipatzeak ere karga sinbolikoa izan dezake figura horrek piztu dituen interpretazio kontrajarriak medio (de Pablo, 2012). Ez dute, haatik, liburua aurkituko bertan, memento horretan lekuz aldatua baitzen (Iriarte, 2000:206).

#### 1.2.1.2. Nafarroako konkista

"1521-ean, Jean d'Albret kondeak, Biarnoan, Amikuzen eta Garazin-barna Iruñarat jo zuen bere soldadoekin, hiriaren Espainiari kentzeko xedetan; bainan jin-bidetik itzultzea behartu zitzaion, ederki zafratua izanik.

Nabarreko erregeren alde gudukatu zen orduan Ignazio Loiolakoa. Saki bat itsusia egin baitzioten belhaun batean biarnesek, zalditik alditxar erori zen aitzindari gaztea, eta ereman zuten ordu berean Gipuzkoako bere jauregirat» (Etchepare, 1931: 26)

Ignazio Loiolakoa zauritzea aipatzen duenean, deigarria da protagonista historikoen kokapen politikoa, gaur eta hemen ohikoa den interpretazioaren aldean; adibidez, Ignazio zauritu zutenak bearnesak ziren, ez Nafarroako erresumaren defendatzaile prestuak: gogoratu Amaiurreko gazteluaren erresistentzia heroikoa, eta hartaz Lauaxetak egindako interpretazio poetikoa,

adibidez7. Ignazio, harrigarriki samar, nafar legitimitatearen alde ari da *Beribilez*en, eta ez Espainiako erregearen alde, esan ohi denez, legitimitate hori Joanes Albretekoak zuela. Historiografiaren bestelako leku batean kokatua zen Etxepare (Tápiz, 2012). Asko idatzita dago, gaineratu daiteke bidenabar, gaurko historiografiaren kinka epistemologikoaz, non ikuspegi anitzen irekitasuna eta osagarritasuna azpimarratzen den, baina bego oraingoz (Dosse, 2006).

1.2.1.3. Napoleon

Errolan bezala, Napoleon ere Ibañetatik pasatu zen espedizio militarrean.

Jean Etxepare historia positiboari lotu zaio, ezen ez antzinate urrun edota mitiko bati. Horretan Etxeparek historiografia frantses ofizialarekin bat egin zuen (Nora, 1997)8, dirudienez, nahiz eta euskal ikuspegia eransten dion:

> "Napoleon handiaren soldado aipatuak, zonbat etzen zuetarik eskualde hotan galdu, 1811-ko itzuli deithoragarrian! Zeren bilha zinabiltzaten ere hemen gaindi, zortzigarren mendearen ondartsurat, Charlemagnen gizonak, Roland gaizoa buruzagi?» (Etchepare, 1931:14)

Ikusten da Jean Etxeparek Napoleonen soldaduekiko enpatia erakusten duela ("Napoleon handiaren soldado aipatuak"), haiei pluraleko bigarren pertsonan zuzenean mintzo zaiela; enpatia baita Errolanen aldera ere ("Roland gaizoa"). Biez gupidatzen da; beraz, bada oreka fina eta apropos bilatua euskaltasunaren eta frantsestasunaren artean.

Jean Etxeparek modalizazio apreziatiboa erabiltzen du, «deithoragarri» adjektiboa erabilita, arbuioa adieraziz. Pasarte historikoa subjektibotasunaren iragazkitik pasaraziko du narratzaileak. Idazleak subjektibotasuna adierazten du, perpausean esandakoa balioztatuta (Le Querler, 1996:85). Intonazio aldetik ere, nabaria da narratzailearen inplikazioa esakunean, harridura-marka darabilela. Nabaria da idazleak modalizatzeko premia sentitzen duela, historiari buruz ari denean, adierazpide borobilegiak saihestu nahiz.

Bisitan, Iruñeko hiriak oroimenak pizten dizkio idazleari Napoleonen ibilerez ere, ez baitzuen enperadoreak asmatu Espainiako politikara sartzeko ahaleginean, Jean Etxepareren ustez. Historia da subjektibotasun anitzen borroka-tokia. Hala ere, Etxeparek ez du sobera barneratu nahi historiak sor ditzakeen istiluetan:

> «Duela mende baten ingurua, Iruñak gogor egin zion halaber Napoleon Handiari, hunek itsumenduz ezarri zuelarik Espainiako erregetzat bere aneia Joseph; bainan, xo! ez ditzagun hemen lehengo zauriak berri...» (Etchepare, 1931:27)

Baieztapen borobilegiak eta ziurtasuna bazterrera utzi ditu batzuetan narratzaileak, esapide leungarriak erabilita (Kerbrat-Orecchioni, 1980), egia liskar-iturri izan bailiteke, medikuak bizipenez oso ondo zekienez. Ez du urrutiegi joan nahi. Ematen du Jean Etxepare aplikatzen ari dela *als ob* (= alegia eta) *dictum*a, hau da, Hans Reichenbachen positibismo logikoak predikatzen zuena, alegia, egia ez dezakegula probabilistikoki baino ezagutu behin-behineko hurbilketa bidez, beraz, egin dezagun gizarte-inguruak egiten duen bezala, zinezko egia balitz bezala oldeak ontzat emandako hura.

Izan ere, polemikoagoa da Napoleonen erasoa Ibañetan zehar Orreagako pasartea baino. Testuinguru historikoa ematea ere baliagarria izan zitekeen arren, Napoleonen aldian idazleak ez du bertsiorik eman nahi, euskaldunen artean *frantsestea* izenaz ezaguna den fenomenoa hortik abiatu baitzen (Altzibar, 2009:91-120)9.

Napoleonek esperantza autodeterminatzaileak piztu zituen hainbat nazio txikitan, baita Euskal Herrian ere, proiektu subiranista baten bideragarritasuna aztertu baitzuen pertsonalki. Izan ere, Napoleon zen giza eskubideak aldarrikatu zituen Iraultzaren oinordeko zuzena, eta nazio txikien asmoen babeslea, ustez. Gurean, hor dugu Dominique Joseph Garat (1749-1833) Napoleon I.aren aholkulariaren proiektua Euskal Herri batu bat itxuratzeko. Izan ziren arinago ere antzeko saioak beste Dominique Garat (1735-1799) baten eskutik, aurrekoaren anaia nagusiarenetik, Iraultza garaian, baina hori beste haritz bateko ezpala da…

Kasurako, Alemanian, Ludwig van Beethoven berak ere *Heroikoa* (1806) izeneko hirugarren sinfonia eskaini zion Napoleoni, askatasunen aldeko bu-

ruzagitzat hartu baitzuen hasiera batean, nahiz eta gero damutu korsikarrak nola jokatu zuen ikusita.

Izan ere, Frantziak zentralitatea izan zuen Mendebaldeko erresumen artean, Iraultzatik hona XX. mendearen erditsura arte. Etxeparek *grandeur* horren zantzua ere badakar, frantses-izaeraren eta nortasunaren balantze ñabartua egiten duenean ("Gizadi guzien artean frantses gizadia badaukat lehen, bat ez baita harek bezalako adimendu erne eta bihotz ona mendez-mende erakutsi izan dituenik. Nausi da bertze guziei» (Etchepare, 1931:72)). Etxepareren garaian, oraindik, Frantzia ez zen igaroa bien arteko herrialdeen munduko sailkapenera, lehen sailari ezin eutsita, erran nahi baita, Frantzia oraino lehen mailako mundu-potentzia baitzen koloniekin, nahiz eta ez luzaro, AEB nagusituko baitzen Europaren gainetik, Mendebaldean behinik behin; eta munduaren gainerakoetan beste potentzia batzuk (Nora, 1997)[10].

Argi eta garbi Etxeparek badu hartzaile zehatz bat gogoan; irakurle jakin batzuk ditu gogoan, eta ez ditu mindu nahi. Alde batetik, identifikatu egiten da kaltetuekin naziotasun frantses ofizial bati jaramon egin gabe, baina, bestetik, ez ditu Napoleonen aldekoak samurrarazi nahi, Napoleon eztabaida-iturri baita. Kaltetuetatik batzuk izan daitezke Napoleonen soldaduak; haritik tiratuz, Iruñeko biztanleak ere izan daitezke inbasioaren kaltetuak. Jean Etxepare moldatzen da kupitzeko hala fantsesez nola euskaldunez, inori irain egin gabe. Gogora datorkigu leialtasun politikoen arteko liskarraren harira, Frantzian bazela bonapartisten alderdia Jean Etxepareren sasoian, Iparraldean ere erroak zituzkeena.

Narratzaileak erreparazio historikoa eskatu du Ibañetan. Karlomagnoren saioaz ari da luze samar, aldiz, Napoleonena kronologikoki hurbilegi dago, eta ez du «zauririk berri"tu nahi moldakaizki aipatuz (Etchepare, 1931:28). Oso kontzientea da historiaren ikuspegi posibleek irakurleen artean izan zezaketen zuzeneko eragin hurbilaz. Narratzailearen aburua da inbasio ekintza horiek absurdoak direla: Napoleonek «itsumenduz» jokatu zuen, esaterako (Etchepare, 1931:28)

Espainiaren kasuan, bultzada ideologiko unitarioa areagotu egin zen espainiarrek Napoleonen inbasio-ahaleginari ustez eginiko erantzutea balia-

tuta (1811); atzerritarraren kontra altxatutako herri espainiarraren irudi mitiko hori ondo etorriko zitzaien talde politiko nagusiei, erregezaleei zein aurrerakoiei, alegia, beren interesetarako (Álvarez Junco, 2001). Beraz, kasu honetan ere argi ikusten da historia-gertakariek duten ahalmen gogorarazlea nazio-proiektu bati buruz.

#### 1.2.1.4. Frantsestea XX. mendean

Iradoki liteke euskaldunak frantsesetatik aparte bizi izan direla Etxepareren historiografiaren arabera, baina XX. mendearen hasieran frantsesteko prozesua azkarragotu dela, idazleak hori onartzen baitu, eta begi onez ikusten, nahiz eta zer gogoetatua ematen dion, ari baita hausnarrean identitate anitzen auzia xuxen nola ebatzi. Horren frogatzat irakur daiteke idazleak sumatzen duen poza Loiolako bidaiatik Iparraldera berriz bueltatzean Bidasoa igarota, nahiz eta Hegoalde abegitsuan bizi izandako une gogoangarriak ukatu ez (Etchepare, 1931:95)

Bada gogoeta bat Iparraldeko idazleen artean frantses izateari buruz, ez baitzegoen dena erabakia XX. mende hasiera hartan. Gogoeta hori urte haietan zabaldua zen, adibidez, Jean Barbierren *Piarres* eleberri *Beribilez*ek aipatuan:

> “Eta gero, Eskual-Herrian ez zen lehenago kontrabandarik, zeren ez zen muga-harririk. Zertako eman dituzte muga horiek Dantxariako edo Irungo zubieri hurbil? Eskualduna ez othe da berez bere ibili behar Eskual-Herri guziko mendietan? Gure lehenagoko zuzenetarik, hori bederen ez othe ginuen begiratu behar, hori bederen ez othe zaukuten utzi behar hego-aldetik edo iphar-aldetik guri nausitu erresumek?
>
> Ez naiz batere Frantses-Herritik zeiartu beharrez ari, ama, zeren maitexko dutan Frantses-Herri handia. Bainan, behin ere ez baitiot aiphatu, ongi jakin nahia nindake, jaun erretorak zer othe dion hortaz? Kastillara batre gabe, eskualdun mendi guzietako zuzenen jabe Eskualduna! Hoi hoi loria, ama!
>
> —Zure loria eta moria guziaz hirri egin lezake, ori, gure jaun erretorak. Ametsak ez du egundaino hazi gizonik, Piarres...» (Barbier, 1992 [1926])11.

Badirudi Etxeparek bera bizi zela ezagutu zuela delako frantseste-prozesua, edo horrela uler dakioke adierazmoldeari kasu emanez gero: 1914ko gerla, modernitatea, industria-iraultza… mugarri sendoak izan daitezke prozesua azaltzeko gaurko begiekin: baina aipatua da jadanik. Areago, ezustean harrapatzen du euskararen atzerakadak daraman abiada, bai Hegoaldean, bai Iparraldean, *Beribilez*en irakur daitekeenez: hizkuntza-gatazka ikusten du herrietako izenak ele biz irarrita ikusten dituenean:

> «Nori ere gogoratu baitzaio eskuararen alderako atxikimendu-seinale hori, bigarren lerroan ezarria bada ere eskuarazko izena, eskerrak hari!
>
> Bainan, laztu nu eskuararen eta erdararen arteko guduaren ikusteak, burdin-zatiño hartan» (Etchepare, 1931:31)

### 1.2.2. *Historia burgesa*

Mediku helduaren ikuspuntu historiografikoa orekatu samarra da, gehiegikeriarik gabea. Kontuan har daiteke nolako eragile historikoak hartu dituen protagonistatzat Jean Etxeparek *Beribilez*en. *Beribilez*eko historia-pasarteen ardatza ez da erlijioa, ez eta monarkia ere, hau da, erresumak eta boterea funtsatu ahal zituzten instituzioak Erregimen Zaharrean, ohi zen bezala. *Beribilez*eko herriari batasuna ematen diotenak dira ohiturak, hizkuntza, zuzenak eta ondasunak, motibo nahiko sekularrak, burgesiaren aginpide berriaren garaikoak. Bestetik, burgesiaren hobespen ideologikoak agerian daude: protagonistak herritarrak dira eta beren kezkak, eta ez pertsonaia gorenak, mitikoak, edo idealizatuak. Demokrazia liberalaren bidean gaude. Pinturan ere antzeko ibilbidea gertatuko zen, pertsonaia sinboliko edo idealizatuak irudikatzetik igaroko baitzen paisaiak eta eguneroko agertokiak irudikatzera.

Etxeparek euskaldunen itsasoa du gogoan kontakizunaren pasarte esanguratsu batean, Gipuzkoako kostaldean zehar autoz bidaiatzean. Hor ere, Etxeparek Amerikako itsasoaren epika gogoan duenean, marinel anonimoak ditu gogoan, eta ez Elkano, Txurruka, Urdaneta edo gisa horretako kapitain-pilotu ospetsuak. Marinelen itsasaldia izan daiteke alegoria bat, autozaleen arbaso migratzaileetan oinarritua, idazleak jasoa (Etchepare, 1931:80); azken finean, pioneroen herronkakoa zen Etxepareren jatorrizko familia (Altonaga, 2006)12.

Itsasgizonez gain, *Beribilez*en, narratzailearen arbasotzat ditu Nafarroa Garaiko lur-langileak ere:

> «zuen bizi xumearen atheratzeko, zer lanak ez dituzue hemen erabili, zer nekeak ez jasan eta zonbat mendez ez, ontasunarekin batean odola utzi daukuzuen arbaso maiteak!
>
> Orai niz garbiki ohartzen zer hazta daukan, eskualde hotako hizkuntzak dakarran “garesti” hitz sarkorrak…» (Etchepare, 1931:19)

Beste arbaso batzuk dira aurreko belaunaldietako langileak ere. Ikusi, adibidez, zein diren arbasoak Zestoako herrian:

> «Durduza batek hartzen gitu bizkitartean, karrika luzearen harateko buruan ikusten dugularik, bere eliza apalarekin, lehengo herri zaharra. Askitto zabal emaiten du; etxeen kantoinetako nola athe, leihoen inguruetako harri pikatu beltzaan dorpeek, pareta histuek begia jotzen daukute, beratzen bihotza. Hor bizi izan ziren orai bizi direnen arbasoak, langile antzetsuagoak bere heinean, hek, oraikoak baino. Sail berari jarraikiz, ara beretan thematuz, semeak aitaren eskuan bere eskua, zendako ez dute bada ondokoek arbasoen herria toki berean ederragotuz goititu, zendako bada ez lezakete oraino goiti?» (Etchepare, 1931:75)

Arbasoak ez dira *Beribilez*en antzinatasun mitiko baten erakusgarriak. Adibidez, Frantzian galiarrak eta frankoak nahi zituzten erreibindikatu nazioari batasuna emateko (*nos ancêtres les gaulois* esamolde errepikatua). Beste eskualde batzuetan zeltak zituzten nahi arbaso gisa (Thiesse, 2014): *Beribilez*en ez dago lehen euskal gizonaren erreibindikaziorik ere (Barandiaran, 1934)[13].

Kontrabandoa aipatuta ere, herritar xeheen baitan jartzen da arreta, esanez Euskal Herrian oso zabalduta dagoela («Eskualdunik ez bide da, Gipuzkoan ere, kontrabandaz guti edo aski bizi ez denik» (Etchepare, 1931:51)

Beste sail batean, *Beribilez*eko narratzaileak historiaren protagonistak gogoan dituenean ere, herri xehearen aldeko hobespena bada, historia burgesaren adierazpide, hala Errolanen nola Napoleonen ekintzak aipatzean. Fokua jartzen du gudarosteetako soldadu apalen baitan, agian, Jean Etxeparek lotinant gisa sufritu zuen Gerra Handiaren eraginagatik.

## 1.3. **Frantximanta eta jesuitak**

Atal honetan erakutsi nahi da nola narratzaileak estereotipo bi porroskatu dituen, eta nola proposatzen duen eskematismoaren lekuan estereotipatuaren ezagutza pausatuagoa, eta zentzuzkoagoa.

Lekunberrin bazkaldu eta gero, Etxepare eta lagunen bi autoak Loiolan gelditu dira. Bidaiariak joan dira tabernara, santutegia bisitatu ondoren. Han, frantses bitxi bat mintzatu zaie ausarki samar, *frantximanta,* kritiko jesuitekiko eta kexu haien ardurapeko ostatu-zerbitzuaz (Etchepare, 1931:69 eta hur.); erantzun gisa, medikuaren lagun batek frantsesaren figura kritikatuko du bere txandan.

Beste pasarte batzuetan bezala, Etxeparek bigarren mailako pertsonaien ahotsean eman nahi du iritzi polemiko samar bat, «Zirikando» (zirikatzen) baitu *Beribilez*eko atal horrek izenburua. Batetik, turista frantses baten, eta, bestetik, autokide baten ahotik jasoko ditu irakurleak, hurrenez hurren, jesuiten eta frantsesen estereotipo «min"garriak (Etchepare, 1931:71) izan daitezkeenak.

Lehenik, jorratuko da jesuiten estereotipo antiklerikala, hau da, jesuita diru-gosea eta goi-klaseen laguna. Ondoren, iruzkinduko da frantses buruarina arbuiatzeko estereotipo bat.

Etxepareren prozedura da estereotipoak jasotzea paperean, segidan ikuspegi orekatuak proposatzeko irakurleari. Bi kasuetan, idazlea bere garaiko gizartean zabal zebiltzan estereotipo bi horiek zuzentzera dator, hau da, jesuiten aldera errespetua eskatzera dator, eta frantsesaren figura kaskarra duintzera beraren izen ona berrezarriz.

### 1.3.1. *Jesuitak eta Voltaireren biloba*

Hona frantximantaren komentarioa Etxepareri, Ignazioren etxean kanoi txiki bat ikusten dutenean bisitan; nabaria da jesuitei egozten zaien politika klasista:

> «Hainbertzenarekin, ene aldeko ikusliar baten [frantximantaren] hitz hauiek jotzen dautate beharria frantsesez:

—Ehun debruak berekin dituzte Jesuistek. Bazterretan dituzten komentu guziak holaxe zainduak dauzkate, beherean kanoiez, gainean aldiz mitrallusez. Orroaz jauzi baledi egun edo bihar jende xehea, baluzke hemen azpitik odoletan idukitzeko gupida ez litzaizkiokenak!

—Ori, diot ihardesten mintzai berean, izan bedi norbait iharduk lezokena: oilo batzu bezala iziturik lasterka bailoazke ihes, jende handien hogoietarik hemeretziak!» (Etchepare, 1931:58-59)

Ez bakarrik klasistak, jesuitak diruzaleak ere badira:

«—Hau da, hau egiazki Jesuisten kafea! dio bazterretik frantses harroak. Nahi dituzten sos guziak biltzen beren museoa erakutsiz, horma puska baten kraskatzeko aldiz mailuxkarik ere ez! Sakelak bethe ondoan, arrats guziez sorhopil huntan, gehiagoko deusen axolarik gabe, diren bezalakoek egiten ahal dituzten jauzi-putinkak! Madarikatuen gatik, egarriarekin hiltzea luke hemen gizonak» (Etchepare, 1931:70)

Turista frantses hori bera tabernan topatuko dute geroxeago bidaiariek; kexu da Loiolako ostatuan jasotzen ari den zerbitzu berankorraz. Jean Etxepareri frantximantak Voltaire dakarkio gogora ("Ez dakit zer bidez, Voltaire zenaren orhoitzapena heldu zait gogora. Haren ilobasoetarik bat ditake gure auzoa» (Etchepare, 1931:71)

Animalia baten traza hartzen du frantximantak narratzailearen hitzetan:

"Bere ezin-egonaz urtxintxa bat zirudiela baikinion oixtian, orai mathel, begi, esku eta zangoen igitzetik ximinoa dirudi» (Etchepare, 1931:72)

Azkenik, zerbitzariak ekarritako edariaren eraginez, «Voltaireren ilobasoa elizako saindu bat bezain geldi dago eta ixil, orai, bere kaderan (…) Ihizi on baten aurpegia daukalarik, etzait iduri halako gizon gaixtoa dela» (Etchepare, 1931:72). Bestalde, da jendetasunik gabea, narratzailearen ustez, gaizki esaka baitabil zuzen kontra.

Hala jesuitak nola frantsesak eskematizatuak daude, erridikuluski deskribatuak. Turista frantsesak eta Etxepareren lagunak baliatzen dute eskema soila, animalizazioa, estereotipatuen iritzien deuseza azpimarratzeko.

Pentsa liteke frantximantak Kanboko bidaiariei zuzentzen dien berbaldiaren mamia jesuitei buruz barra-barra zebiltzan topiko antiklerikalen oihartzuna dela.

Imagologiak dio herrialde imajinatuak balio diola abiapuntuko herrialdeari, bere arazoak erabakitzeko (*rêverie*). Pentsa liteke jesuiten inguruko tirabirak Loiolako solasaldietan agertu arren, Frantzian pil-pilean zegoen Elizaren eta estatuaren arteko talkaren atal batean dutela jatorria: jesuitak.

Frantzian Espainiak duen irudia mintzagai duela, ikerketak argitu digu Espainiako historia erabilia izan dela Frantzian nagusia zen pleguaren arabera, unean uneko arazo frantsesak ebazteko moduan:

> «Last but not least, la Historia específicamente francesa resulta tan determinante como la Historia española. En muchos casos son las circunstancias políticas francesas las que hacen que se acuda a ésta [Espainiako historia], en particular a sucesos más o menos antiguos, para posicionarse de forma indirecta con respecto a la actualidad francesa» (Boixareu (arg.), 2002:837)

Jean Etxeparek jesuitak jartzen ditu jomugan, antiklerikalismoaren tematika guztiaren artean puntu hori aukeratuta, horretara Iparraldeko gizartean pil-pilean zegoen auzi bati oratu dio. Antiklerikalismoaren figura nagusitzat jotzen da sektore batzuetan Voltaire filosofo ospetsua, Frantzian. Hona orduko giroaren argazki bat:

> «Terminadas éstas [erlijio-gerla katastrofikoak] sin una derrota completa de la herejía, los males, inevitablemente, llovieron sobre la Europa protestante: germinaron allí ideas absurdas y pecaminosas, como la tolerancia –que pone al mismo nivel la verdad y el error– o la fe en la razón y el progreso –basada en una insensata confianza en la capacidad humana de rectificar el orden establecido por Dios–. El fin último de aquellas empresas intelectuales había sido destruir las religiones, y en particular la cristiana, como demostraban las agresiones y burlas a la santa Iglesia de Dios por parte de Voltaire, cuyo solo nombre evocaba la maldad de todo un siglo» (Álvarez Junco, 2001:368)

Zehatzago esatearren, jesuitek, Lagundiaren ibilbide historikoan, aurkitu dituzte aurkari famatuak Frantzian, eta bestetan ere bai, bide batez esanda:

Frantzian, nagusiki Pascal, Nicole, Voltaire, Michelet eta Quinet. Pertsonaia historiko horiek irudikatzen dute erlijioaren eta kulturaren arteko talka. Adibidez, Pascal jansenistaren ustez jesuitak laxistak dira (Pascal & Nicole, 1700), hau da, bekatuak kudeatzerakoan kasuistika baliatzen dute, beren eragina zabaltzeko politikaren eta boterearen gizarte-esparruetan. Pascalen ustez, jesuitak, bekatuaren penitentziak ipintzean, eskuzabalegiak ziren penitentziarekin, kasuan kasuko zirkunstantziek arau orokorrak baztertzea zilegi egiten zutelako. Bestetik, jesuitei egotzi zaie luzaro klase boteretsuen aliatuak izatea.

Jesuitak, bestalde, ultramontanoak izatea gertatu da, hau da, klerikalak, Elizaren edozein zaharberritzeren kontrakoak, gizartean burgesiaren botere sekularizatzailea hedatzen ari zen memento hartan. Aurrekarien atalean aipatu denez, Etxepare bera klerikalismoaren aurkari agertzen zen, baina soilik Lacombe lagunari eginiko gutun pribatu batean, 1905ean (Xarriton, 1995)14. Jesuiten ultramontanismoak bat egingo zuen Espainian alderdi integristarekin, katolikoetan muturrekoena. Beraz, *Beribilez* da jesuitei buruzko sentimendu gutxi asko topikoen erakusleihoa. Pío Baroja Etxepareren garaikideak ere antzeko aburuak jaulki zituen 1898an (Baroja, 2000)15.

### 1.3.2. *Etxepareren jarrera*

Helduaroko bere filosofia patxadatsuari men eginez, 1928ko Etxeparek modulatu egin du jesuiten aurkako iritzi kritikoaren zurruna, baina ez du baztertu nahi izan haren aipatzea, koherentea izan nahian bere egiaren bilaketa karakteristiko harekin: modulazio hori bera ageri baita *Beribilez* bertako beste pasarte batzuetan ere. Etxeparek jesuiten aldeko eta kontrako iritziak jasotzen ditu: aldekoak narratzailearen ahotsean, eta, kontrakoak, frantximantaren bidez, narratzailearen eta irakurlearen bitartean jarritako pertsonaia kasu honetan.

Etxepare zorrotz agertzen da ziri antijesuiten kontra:

> «Jesuisten erakaspenari edo sinesteer berer sistako baten emaitera loake segur bere mihi ozpinduaz [frantximanta], –bihotzean min egi-

> ten duten, eta sekula nehori-buruz igortzeko ez litazken sistako hetarik» (Etchepare, 1931:71)

Agian, ez da gaur-gaurkoa eztabaida antijesuita hori (Bertrand, 2007). Izan ere, gaur egun, jesuiten kopurua murriztu egin da nabarmen Europan, nahiz eta munduko beste herrialde batzuetan ugaritu egin diren: India, etab.; orain, Loiolan bertan jesuitak urriak dira eta adinekoak16.

Nolanahi ere, antiklerikala da Loiolan topatutako frantses hau, nahiz eta baziren frantses zuriak ere: *Eskualduna* aldizkari arrakastatsua, esaterako, *Action française* eskuindarrarekin lerratu zen Gerra Handian (Bidegain, 2013).

Kanpokoaren estereotipoak balio dezake talde-kohesioa lortzeko, eta frantximantaren kasu honetan frantses gaizki esalearen estereotipo honek duen balioa izan daiteke euskaldun fededunen taldeko kohesioa areagotzea, eta, horregatik, ohiko estereotipo errepikatua izatera iristea orduan (Schröder-Abé & Schütz, 2007). Kontuan hartzekoa da, gaingiroki, euskaldungoa Iparraldean Elizaren tutoretzapean zegoela; beraz, politika konfesionalaren jokabide interesatutzat har liteke frantsesa den oro eta antiklerikalismoa berdintzeko estrategia manikeoa, edota, benetan, fededunak hain zeuden sinistuta beraiek zeukatela euskaltasunaren monopolioa, non edozein desbiderapen arrotzei egozten zitzaien. Azken batean, esan liteke Euskaltzaleen Biltzarra elkarte indartsua bera ere «zuria» zela 1914 aurrean, apaizak baitziren bazkide talderik handienetako bat (Goyhenetche, 1993). Hipotesia da *Beribilez*en garaian ere berdin jarraitzen zuela «zuria» izaten Biltzarrak, ez baita ezagutzen bitartean haustura esanguratsurik.

### 1.4. **Hondarrean**

Ikusi dugu Jean Etxepare heldutasun-ariketa batean murgildua *Beribilez* idaztera jarri zenean, 1931 inguruan17, betiere gaztetako pentsamoldea eztiagotu beharrean.

Idazlearen heldutasuna islatu da, besteak beste, kontraesanak gainditzeko sintesi-espiritu batean. Muturreko jarrerak gaindituta, hirugarren espazio bat osatzen saiatzen dela iruditu zaigu. Hori da, bederen, *Beribilez* bere

azken liburuan adierazten duen xedea, berak *neurria* izenarekin aipatzen baitu, Greziako *sophrosyne* kontzeptuaren bidetik, agian (Etchepare, 1931:82); gaztetako zenbait aburu desmasiatzat jotzen ditu, behinik behin, haiek zabaltzeko adierazpideei dagokienez bezainbatean. Alabaina, *Buruxkak* (1910) gaztetako liburuan isuri ahal izan zuen kemena ez dauka ahazteko. Hari horretatik, idazlearen pentsaera osotasunean ezagutuko bada ezinbestekoa da jotzea Piarres Lafitterekin azken urte haietan izan zituen gutunketa pribatura (Xarriton, 1991).

Artikulu honetara hiru pusketa soil ekarri badira ere, medikuak baditu beste batzuk neurritasunaren ildo beretik, adierazgarri samarrak aipagai izan dugun liburuan: itsasoen alegia, erotikotasun bridatua, aberastearen on-gaitzak Donostiatik igarotzean, etab.

Artikuluaren sarreran hizpide izan ditugu Jean Etxepareri buruzko orain arteko lan nagusiak. Aipatu ditzagun bigarren aldi honetan eginkizun batzuk, idazle honen lana areago ezagutzeko aproposak. Sakonago azter litezke, besteak beste, honako hauek: haren estiloaren gorabeherak; zentsuraren eta autozentsuraren jokoa idazkietan islatua, alde batera Joan Mari Torrealdaik Francoren garaiko izkribu zentsuratuak iruzkintzean eskaini digun bide-orria erabiliz; testuen genetika erabilita, idazlanen bertsioak, etab.

### 1.5. **Bibliografia**

Altonaga, K. (2006). *Etxepare Aldudeko medikua.* Leioa: Euskaltzaindia/EHU. Eskuratze-eguna: 2017ko martxoaren 20a. Iturria: http://www.euskaltzaindia.net/dok/iker_jagon_tegiak/66692.pdf

Altzibar, X. (2009). «Napoleon eta frantsestea euskal literaturan». *Bidebarrieta: Revista de humanidades y ciencias sociales de Bilbao,* 20.

Álvarez Junco, J. (2001). *Mater dolorosa. La idea de España en el siglo XIX.* Madrid: Taurus.

Antxustegi, E. (2004). «Hitzaurrea» , in E. Renan, *Zer da nazioa?* Leioa: EHU.

Azurmendi, J. (2003). «Humboldt eta Renanen nazio kontzeptua». *RIEV,* 48-1, 91-24.

Barandiaran, J. M. (1934). *Euskalerriko leen gizona.* Zarauz: Itxaropena.

Barbier, J. (1992 [1926]). *Piarres I.* Euskal Editoreen Elkartea.

Baroja, P. (2000). *Opiniones y paradojas. Prólogo y selección de Miguel Sánchez-Ostiz.* Madrid: Caro Raggio.

Bertrand, D. (2007). «Ignace de Loyola» , in Azria, R. eta Danièle Hervieu-Lèger (zuz.) *Dictionnaire des religions*. Paris: PUF.

Bidegain, E. (2013). *Lehen mundu gerra «Eskualduna» astekarian.* Bilbo: Euskaltzaindia.

Boixareu, M. e. (2002). *La Historia de España en la Literatura Francesa.* Madrid: Editorial Castalia.

Casenave, J. (1991). «Nature et vie rurale dans «Laborantzako liburua”: la figure du paysan». Mémoire présenté en vue du DEA d´Etudes basques. Azkue Bibliotekan (Euskaltzaindia) kontsultatua.

———, (1998). «Le renouvellement de la prose basque a travers Buruchkak (1910) de J. Etchepare». *Lapurdum,* 3. Eskuratze-eguna: 2016ko urriaren 25a. Iturria: http://lapurdum.revues.org/1710

———, (1998). «Euskal nortasunaren irudiak XIX. mendeko bigarren partean”,in E. Ikaskuntza/Bilbo (Ed.), *Euskaltzaindia. XIV. Biltzarra; Eusko Ikaskuntza. Antoine d´Abbadie 1897-1997. Ezohiko Kongresua.* Hendaia-Sare; Donostia; Bilbo: Euskaltzaindia.

———, (2002). *De l´article de presse à l´essai littéraire: Buruchkak (1910) de Jean Etchepare.* Madrid: UNED.

Charritton, P. (2003). *De Re Publica edo politikaz.* Elkar.

de Pablo, S. (2012). «Sancho el Mayor», in S. e. de Pablo, *Diccionario ilustrado de símbolos del nacionalismo vasco.* Tecnos.

Dosse, F. (2006). «Histoire», in S. Mesure, & P. Savidan, *Le dictionnaire des sciences humaines.* Paris: PUF.

Etchepare, J. (1931). *Beribilez.* Baiona: Laserre. http://www.memoriadigitalvasca.es/handle/10357/873 helbidetik eskuratua.

———, (1920). «R. M. Azkue euskaltzainburu», in P. Xarriton, *Jean Etchepare mirikuaren (1877-1935) idazlanak. I. Euskal gaiak*. Donostia: Elkar, 187-202.

Gallud Jardiel, E. (2016). *Historia cómica de la literatura mundial.* Madrid: Verbum.

———, (2017). *Historia cómica de la filosofía.* Madrid : Apeiron Ediciones.

Gartzia Trujillo, S. (2016). «Jean Etxepare», in *Hamaika euskal literato eta Jainkoa.* Leioa: Euskal Herriko Unibertsitatea.

Goyhenetche, J. (1993ko 1. seihilekoa). Les origines sociales et historiques d'Eskualzaleen Biltzarra (1893 – 1913). *Bulletin du Musée Basque Bayonne,* 135, 1-68. https://www.google.es/search?q=%22Les+origines+sociales+et+historiques++-de+l%C2%B4Association+Euskaltzaleen+Biltzarra&ie=utf-8&oe=utf-8&gws_rd=cr&ei=ZGauVeOoM8GuesnLpYgM helbidetik eskuratua.

Hamon, Ph. (1984). *Texte et idéologie*. Paris. PUF.

Hiribarren, J. M. (1926ko jorraila). «Altabizkarreko kantua». *Gure Herria,* 6.

Iriarte, I. (2000). *Tramas de identidad. Literatura y regionalismo en Navarra (1870-1960).* Madrid: Biblioteca nueva.

———, (2012). «Roncesvalles», in S. e. de Pablo, *Diccionario ilustrado de símbolos del nacionalismo vasco.* Tecnos.

Kerbrat-Orecchioni, C. (1980). *L´énontiation de la subjectivité dans le langage.* Paris: Armand Colin.

Le Querler, N. (1996). *Typologie des modalités.* Caen: Presses universitaires de Caen.

Leoné, S. (2008). *Euskal Herri imajinario baten alde.* Donostia: Elkar.

Lertxundi, B. (1981). *Altabizkar. Itzaltzuko bardoari.* (Elkar, Ed.)

Lorenzo Arza, M. (d.g.). «La construcción de la nación asimétrica en los libros de viajes y cuadros de costumbre regionalistas». Eskuratze-eguna: 2016ko otsailaren 5a. Iturria: Academia.edu

Mesure, S. e. (2006). *Le dictionnaire des sciences humaines.* Paris: PUF.

Michelena, L. (1960). *Historia de la Literatura Vasca.* Madrid: Minotauro.

Nora, P. (. (1997). *Les lieux de la mémoire.* Paris: Gallimard.

Ortiz de Pinedo, A. (2018). *Jean Etxepareren* Beribilez *(1931): bidaia eta ideologia*. Tesi argitaragabea (Euskal Herriko Unibertsitatea/Université Bordeaux-Montaigne III).

Pageaux, D. –H. (1989). «De l´imagerie culturelle à l´imaginaire», in Brunel, P. eta Y. Chevrel: *Précis de littérature comparée*. PUF. Paris.

Pascal, B., & Nicole, P. (1700). *Les Provinciales, Ou Lettres Ecrites Par Louis De Montalte A Un Provincial De Ses Amis, Et aux RR. PP. Jesuites sur la Morale & la Politique de ces Pères.*

Pérez Zúñiga, J. (1911). : «Cuatro palabras del recopilador», in L. Taboada et al., *Historia cómica de España.* Madrid: Imprenta de los hijos de M. G. Hernández.

Renan, E. (2004). *Zer da nazioa?* Leioa: EHU.

Schnapper, D. (2006). «Nation», in S. Mesure, & P. Savidan, *Le dictionnaire des sciences humaines.* Paris: PUF.

Schröder-Abé, M., & Schütz, A. (2007). «Collective Self», in Baumeister, R. F., & Vohs, K. D. (Eds.). *Encyclopedia of social psychology*. California: Sage Publications.

Spencer, J. (1996). «Nationalism», in Barnard A. & J. Spencer (arg.), *Encyclopedia of social and cultural anthropology.* Oxon: Taylor & Francis.

Tápiz, J. M. (2012). «San Ignacio de Loyola», in S. e. de Pablo, *Diccionario ilustrado de símbolos del nacionalismo vasco.* Tecnos.

Thiesse, A. M. (2014). *La création des identités nationales. Europe (XVIIIe-XXe siècle).* Paris: Seuil.

Xarriton, P. (1991). «Jean Etchepare jaun mirikuak Piarres Lafitte jaun apezari idatzi zenbait gutun (1924-1935)», in J. A. Lakarra (ed.), *Memoriae L. Mitxelena magistri sacrum. Pars prior.* Donostia: ASJU-Gipuzkoako Foru Aldundia.

Xarriton, P. (1995). «Fonds Lacombe: les lettres du docteur Jean Etxepare (2-6-1905; 1905-VI-02, 4-3-1932)». *Bulletin du Musée Basque*, 140-144. 1. gutuna.

Zabala, A. (1991). *Frantsesteko bertsoak.* Auspoa.